# MAGDALAKO MARIA 07/22an

**Sarrera-oharra**

Ondo etorri, senideok, Madalena eguneko eleizkizun honetara.

Madalena omentzeak, apostolutza aintzat hartzea dakar, berbizkundearen testigutza norberetzea dakar, emakumea aintzat hartzea dakar, pekataria ez baztertzea dakar… Jesusen jarraitzaile izan gura dauanarentzat, behintzat.

Parrokiaren zaindari omentzen dogunok, aukera paregabea dogu, Jesukristoren gure jarraitzailetza barriztatzeko, berbizteko eta erromeria baino apur bat harago joateko. Izan daigun gogoko.

**Lehenengo irakurgaiari**

*Egia esan, ez gagoz ohituta laztan-berbak entzuten, ez-eta, agerian bada, esaten ere. Gaurkoan aukera bat dogu, eta aprobetxatu daigun: Jainkoak maitale lez bilatzen gaitu.*

**Kantarik Ederrena liburutik** (*Kt* 3, 1-4a)

Hau dino emazteak:
«Neure bihotzeko kuttunaren bila ibili nintzan gauez, ohean;
bila ibili, bai, baina aurkitu ez!
Jagi eta herrian zehar abiatu nintzan,
kale eta plazetan zehar,
neure bihotzeko kuttunaren bila;
bila ibili, bai, baina aurkitu ez.

Herrian ebiltzan zaindariek aurkitu ninduen.
"Ikusi ete dozue nire bihotzeko kuttuna?",
itaundu neutsen.
Hareengandik aldendu nintzaneko,
aurkitu neban neure bihotzeko kuttuna».

Jaunak esana.

**Ebanjelioari sarrera-oharra**

*Oraindino harritu egiten gaitu. Baina Jesusen taldean emakumeak ere ba ebiltzan, eta aurretiaz pekatari markatuak gainera. Ez ete gaitu honek kezkatu eta adoretu behar?*

*Egin deiogun harrerea ebanjelioari Aleluia abestuz, zutunik.*

**R/. Aleluia.**
**ESKARIAK**

† Egin daiguzan gure eskariak maite dauanak dakila Jaunaren barri emoten gogoan izanik:

—Eleizearen alde: Jauna maite-maite izan daian eta baita gaurko gizakia ere, honi Barri Ona iragarri ahal izan deion eta entzuna izan daiten, *eskatzen deutsugu, Jauna*. (**ZEUGAN DOGU USTE ONA**)

—Gurasoen alde: seme-alabei Jesusen barri emoten ahalegindu daitezan, hareengandik gero heldutasuna eta maitasun-egintzak jaso daiezan, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Jesus Jaunaren barri emoten dihardauen misiolarien alde: herri-xehea maite-maite izan daien, harengandik ikasteko ere gauza izan daitezan, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Izurrite aldian argiago, alkarregaz baino ez garala salbauko jakinda, danok ahalegindu gaitezan gomendioei jaramon egiten eta alkarren ardurak hartzen, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

—Eukaristia ospatzeko zoria dogunok Jesus Jauna ezagutzeko eta maitatzeko zabaltasunez hurreratu gaitezan beragana, eta gero haren barri emon daigun hitzez eta bizieraz, *eskatzen deutsugu, Jauna*.

† Maitasunezko iturri agortezina zaran Jainko Jauna: jakin daigula maitasuna aintzat hartzen eta haren testigu izaten. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

**Azkenean**

Zertan datza Magdalako Mariaren handitasuna? Ospatu dogunak zertara eroan behar gaitu, haregaz zintzoak izan gura badogu?

Jesusek lokarrietatik askatu egin dau Maria, eta honek esker ona agertzen deutso, Jesusek bere taldean onartzeraino eta bere

biztueraren lehen testigu bihurtzeraino, lehen apostolu edo barri-emoile.

Bagara apostolu? Badakigu emakumea errespetatzen eta, arriskutan ikustean, haren alde urteten?

Lagunduko ete deutsagu emakumeari bere duintasun-lekua eskuratzen, bai Gizartean eta baita Eleizan ere?